# AITA MEAGER-EC

## ARDOARI JARRITACO ITZ NEURTUAC.

Ni naiz chit gauza gozoa
Eta pozquida osoa,
Beltza naiz ta zuria,
Illuna eta arguia,
Indarra det eta garboa
Eta icena det ardoa.

———

Noe guizon aditua
Cedorren pensamentua
Izanzan gauza andia
Ipintcea mastía,
Zu zaitugu ardoaren autore
¡Oh zorioneco NOE!

———

Edari maitagarria,
Tristearen alegria,
Dezu alaitcen beguia
Quentcen melanconia
Mutuba ipintcen cantari
Eta errena dantzari.

Ausi, atera, ebaquia,
Llaga dala, edo zauria
Curatceco belarra
Clareta edo nafarra
Moscatela edo malaga,
Edocciñ ardo ona bada.

———

Pasatcen du aste osoa
Aitzurtcen batec soroan
Necaturic guztia
Dariola icerdia,
Laster legoque au galduric
Ezpalu jaycan ardoric.

———

Jateco ez bada gogoric
Eta eciñ eguin loric,
Eritasun oben
Edo beste edoceñen
Curatceco balsamoa
Da mats onaren zumoa.

Ardo gabe ez da funcioric
Ez mezaric eta ez eztaric.
Bada au faltatu ezquero
Ez da arquitzen guero
Baicic naigabeco tristura
Illuntasuna ta malura.

———

Galenoren medecinac
Ta farmacia guztiac
Du botiquic onena
Ardoaren taberna,
Todo lo sana guztia
Ardo ona daucan zaguia.

———

Barbero medicu guztiac
Erremedio aundiac
Dituzte besterentzat,
Baña bada berentzat
Erremedioric oberena
Ardo zarric dan onena.

———

Ardoa eranic neurriz
Beiñ illa pizten du berriz,
Baña bada asitcen
Belaunac limuritcen
Eta iraquiten buruban
Ez da gauza onic orduan